*kaixo!!!*

"Andria andria danak belaunak junto eta turtukiña tapauta". Gu belaunak zabaltzera gatoz, turtukiña erakustera. Ikutzean sentitzen delako egiten dugu paperean. Espazio propioa, konpartitua eta konektatua. Betaurreko moreekin, irakurri, gozatu. Plazera gurea da.

# x KORAPILOAK x

Korapilaturik ditut
Bihotza
Eztarria
Eta burua

Korapilatu dizkidazu
Taupadak
Ahotsa
Eta ideiak

Korapilatsua da
deskorapilatzea.

Bihotzak ezin taupatu
Ahotsak ezin oihuka
Buruak ezin pentsatu

Ezin naiz askatu.

_tanta

# dantza (de)bekatua eta bestelako txakurkeriak

Duela gutxi, ezagun batek komentatu zidan, agian tabernetan reggaetoia debekatu beharko litzatekeela. Udaletxeko pleno batean mozio bat aurkezteko lanean zebiltzala lagun talde bat. Zer pentsa eman zidan gertakari honek, pertsona honek, ni talde honetara batuko nintzelakoan komentatu zidan, iritzi berekoa nitzelakoan. Hemendik abiatuta bidaia bat proposatzen dizuet, dantza, bekatuak, eliza, gorputza, dantza eta bestelako txakurkerien bila. Gai honek, askorako eman dezakeen arren, koreografia labur bat proposatuko dizuet, koreografia ez-profesionala, herrikoia.

Dantzatzea, abestea, instrumentuak jotzea eta janztea, musikarekin lotura duten ekintzak dira, ekintzak izanik, gorputzen bidez garatzen dira. Gure gorputzok, ez dira neutroak, moralitate, erlijio, ekonomia, politika eta klase kontzeptuek zeharkatzen gaituzte. Gure gorputzok, plazan zein intimitatean, tradizio eta traizioen artean bueltaka aritu dira mendez mende. Eta dantzen debekuak eta bekatuak, ez dira gaurko kontua, ordea, nork, noiz, nola, zenbat, non eta nola dantzatu genezake?

Cumbia, tangoa, salsa, perreoa eta bestelako dantza latinoak eduki sexista eta matxistengatik seinalatzen ditugu sarritan; haur eta nerabeak eskoletan mugikorrean reggaetoia ozen entzuten dutenean eskandalizatu al zarete inoiz? autobusean sartu eta txun-patxun-patxun txun-patxun-patxun erritmoak zorabiatu al zaitu inoiz? Edota ordu-txikitan, zoro-antzean perreoan dantzan aritzen direnen ingurutik aldendu eta tabernaz aldatu al zara inoiz? Onartzen dut, ni horietakoa izan naiz inoiz, baina horrek ez du esan nahi reggaetoia, dantzatzea eta perreatzea gustatzen ez zaidanik. Ezta musika honen bueltan ezagutzen ditugun kantu komertzial asko salagarriak direnik ere ez. Baina eman diezaiogun buelta bat asunto honi udaltzainak tabernetatik bueltaka jarri aurretik...

Irukurutzeta eguna, Azkoittiko mutiko-mutillei, Duro biña multe, Dantza ein dutelako, Neskiai heldute

Etxetik gertu, hainbat testigantzei jarraika, helduta eta hurbil dantzatzea ere ez omen zen ondo ikusten gure aiton-amonen garaian. Agarraua publikoki dantzatzea debekatuta omen zegoen pasa den mendearen hasieran, eta isunak jartzen ziren. Nazio-identitate kontuak tarteko, dantza kanpotarrak baztertu nahi izan ziren, besteak beste bertako balore eta duintasunaren kontrakoak zirelako. Agarraua dantzatzen zuten gazteei, dantza sueltoa eta bestelako euskal dantzak dantzatzeko konbentzitzen zituzten. Gerra ondoren, dantza sueltoaren alde bi bandoetako moralistak bat etorri ziren plazetako jarduna arautzerako orduan, karlistak eta nazionalistak, irabazleak eta galtzaileak[1]

*"Para nadie es un secreto que la juventud de nuestros días se halla bastante relajada en materia de costumbres y moralidad, a consecuencia de las enormes propagandas pornográficas y subversivas que en su derredor han tenido lugar en los últimos tiempos de dominación rojo-separatista y en los siete años de República laica, en que agentes asalariados recorrían los pueblos con el fin de corromper a la niñez y a la juventud de ambos sexos, sembrando en ellos ideas erróneas y vicios perniciosos que no podrán ser extirpados sino con una labor educativa, constante y profunda de varios años [...]."*



## Saltsa, zaporea eta kontrola

Reggaetoia eta abesti hauen letren inguruko iritzi-zurrunbiloak ez dira baina hemengo kontua bakarrik. Nazioartean ere, Colombian eta Cuban esaterako, Reggaetoia eta Twerk bezelako dantzek hautsak harrotzen dituzte, musikologo kubatar batzuek reggaetoia desagerrarazi nahi omen dute. Eta Colombian, Cambio Radical alderdiak duela gutxi, Cartagena hiriko irrati-kateak regulatzeko proiektua aurkeztu zuen, "El Choque" moduko dantza erotikoak debekatuz, batez ere nerabeen artean.

Egungo dantza debekatuak aipatuta, amerika kolonialaren garaira bidaiatxo bat proposatzen dizuet. Izan ere, egungo Abya Yala eta Karibeko fenomeno sozial, moda eta korronte ezberdinak ezagutzeko, ez da nahikoa gastronomia, musika eta dantzak ezagutzea, beharrezkoa da bertako egiazko historia ezagutzea, eta gurutzatzen dituen genero, klase eta arraza ardatzetatik ikuspegi deskolonizatzaile bat izatea:

Abya Yalaren inperialismo prozesuarekin batera, jatorrizko kulturen suntsiketa etorri zen, baita dantza eta musikarena ere. Herrien suntsiketarekin batera, denbora, espazioa eta gorputza bera ulertzeko moduak inposatu nahi izan ziren. Hau da, gorputza eta arrazoia dikotomia bezala ulertu, musika eta dantzaren arteko elkarrizketaren gainean. Europarrentzat gorputza edo naturarekin zerikusia zuen guztia negatiboa zen, gorputzaren erruz pekatuan erortzen ziren indigena eta esklabuak. Garai hortan, batez ere Afrikatik milioika esklabu bortxaz mugitu zituzten kontinente berri batera. Esklaboak errebelatzea ekiditeko esklabisten estrategietako bat zen jatorri ezberdinetako esklaboak nahastu eta euren arteko elkarrizketak ekiditea. Esklaboek, erresistentzia eta komunikaziorako bestelako bideak asmatzen zituzten gorputz eta musikaren bitartez. Europarrak honen aurrean, gorputzaren bidezko hainbat praktika arautzeko bideak ere ireki zituzten, urtetan iraun zutenak (eta dirautenak):

Totarque-a eta Pava dantzatzen zuten esklabo beltzek Perun, elizak debekatu egin zituen eduki erotikoa zutelako. Guraizeen dantza, dominazio espainiarraren aurretik ere dantzatzen zen, lur azpiko jainkoei gurtzeko erritual hau deabruen kontua zela zioen eliza katolikoak.

Ozeanoan bestaldera hegan eginez, duela 100 urte inguru, Mexikon, sarekada polizial nahiko ezagun bat gertatu zen, LGTBIQ topaketa batean. Hain zuzen, 41 gizon atxilotu zituen dantzaldi batean, Mexiko D.Fko lokalean. LGTB komuniteak,.....

Monseñor Builesek manboa debekatu zuen Colombian, eta aldakak modu nabarmenean mugitzen zituen pertsona oro mehatxatu zituen. Izan ere, elizak, erritmo afrikarrak eta son doinuak markatzen zituzten tinbalen larruak deabruarekin lotzen zituen.

*"El baile es un ejercicio provechoso... es un correctivo de la vida sedentaria que de ordinario lleva la mujer, contribuye favorablemente a mitigar las penas, puede curar alguna dolencia, pero todo esto lo producirá á condición de que se observen ciertas reglas... Aire puro y libre, un estómago desocupado, que el baile no se prolongue muchas horas, que el piso sea sólido, liso y que no se levante el polvo, que no haya aglomeración de personas para que todas puedan respirar cómodamente... que no se usen vestidos apretados y que no se baile seguido mucho rato y sin descansar... Las señoras deben abstenerse también durante la época periódica en que su sexualidad se manifiesta más distintamente... "*

*"El baile ante la higiene". La salud..., 2 (1883), 27-30.*

"Tangoa XIX. Mendearen amaieran sortu zen Argentinan, garai honetan gizonak gizonekin bakarrik dantzatzen zuten, kale eta burdeletan.

1910. urteareen bueltan, Europan eta batez ere, Parisen modan jarri zen. Alabaina, dantza bera eraldatu eta "formaldu" egin zen, gizon-emakumeen arteko dantza bihurtuz. Garai honetan, emakumeek emakumeen artean ere dantzatzen zuten, nahiz eta burdeletan ezkutuan izan.

Behin Pariseko dantza-moldea Buenos Airesera bueltatuz, jatorrizko tangoa desagertu eta emakume eta gizonek saloi eta milonga publikoetan dantzatu zitekeen.

Garai kolonialetara bidaiatuz, konkistatzaile eta erlijioso espainiarrentzat dantza desleiala zen zerbait zen, zigortu behar zen zerbait. Gorputzarekiko eta haren espresio bideekiko maitasuna eta askatasuna irudikatzen zuenez, zigortu egin behar zen. Inperialista europarrentzat gorputzarekiko maitasuna gizakiaren etsaia zen, indigena eta beltzentzat ordea kontrako esanahia zeukan. Mundu ikuskera oso kontrajarriak zirela ikusirik, espainiarrek, leku askotan dantzatzea baimendu zuten (egun erlijioso baten bezperan izan ezik), hau horrela egin izango ez balitz mezatara ez zen inor joango eta.



## Dantza (des)generatua

*"Seguru asko, reggaetoia matxista dela dioten pertsona horiek eurek esajeratutzat hartuko naute esaten badut musika-jaialdi indieak sexistak direla. Baina, galde diezaiogun gure buruei: zenbat emakume DJ aritzen dira musika elektronikoko aretoetan? Zer emakume eta gizon eredu sustatzen ditu heavy metalak? Zenbat emakume musikari egon ohi dira rock-jaialdietako karteletan?"*
*June Fernandez, 2015*

Musika eta dantzaren mundua genero eta klase ikuspegitik aztertzea, interesgarri bezain beharrezkoa da, gai konplexua eta ziurrenik 40 fanzine mota ezberdin sortu al ditugu honekin. Izan ere, kontzertu eta jaialdietan dantzatzen dugun musika gehiena da gizonezkoek egina, heterosexuala eta zuria. Punk eta hardcoretik hasita, indie festibaletaraino. Txosna eta tabernan alde batetik bestera saltoka, dantzan abestu izan dugun Eskorbutoren abesti honek adibidez, kapitulu batzuetarako lana emango liguke...

*"quisiera enrollarme a una mujer policía para estar jodiéndola*
*todos los días, todos los días"*

Soinu-banda aldatuz, Eskorbutoren ordez Cumbia Queers jarriz, eta praktikara joz, ezagutzen dugu gai hau lantzen ari den herri-ekimenik? herri-musika eta dantzak ber-asmatzeko nola eragin kalean? ezarrita dagoenari uko egiteko erritmoz aldatzea nahiko bagenu? Plazetan trikitixaren ordez cumbia-erromeriak egiten probatuko bagenu?

Egun edonon jarri genezake musika, edonon
aurki genezake munduko edozein txokotako musika. Dantzarako espazioak ordea, ez dira hainbeste. Dantzak ezagutu, fusionatu eta ozeanoan

bestaldeko dantza-estiloak esploratzeko geroz eta zaletasun gehiago dagoen arren, espazio-informalen falta itzela dago. Aitzaki formalik gabe, kosta egiten zaigu gorputzak kontaktuan jarri eta dantzan aritzea, baditugu plazan dantzatzeko erritual batzuk urtean zehar, eta eskerrak!
Perreoa eta beste-dantza asko gure borroka esparru ere bilakatu daitezkeelako. Perreatu nahi badugu, aldatu dezagun albokoa heltzeko modua eta abestia, eta ez bakarrik musika estiloa. Etengabe entzuten ditugun abestietatik haratago badaude-eta musikari berdinzaleagoak. Beste gorputz batzuengana hurbiltzeko erritmo goxoa eta baldarrak baitira, aldi berean. Duela mende batzuk, amerikaetara joan ziren hainbat euskaldun kolonizatzailek ez zuten dantzatzea eta perreatzea gustoko, orain ordea Euskal Herria tropikalizatzen ari da!
Bilaka aritu ezkero, handik eta hemendik, badira dantzaren esparrua modu kritikoan lantzen duten ekimen herrikoiak gure bidai honen amaiera moduan ideiak hartzeko lagungarri izan ditzazkegunak:

## Bazterretako dantzariak

Bazterretako Dantzariak izeneko taldea, euskal kultura eta, zehatzago, euskal dantza ikuspegi feminista, inklusibo eta garaikide batetik sentitu, sortu eta TRANSmititu beharrak eraginda sortu zuten. Bazterretako Dantzariek, nork bere esperientziatik abiatuta, ezinbestekotzat jotzen dute euskal dantza "tradizionalen" eszenografiak eta ikurrak, koreografiak eta gorputzak birpentsatzea.
Kritika hau gaur egungo jendarte garaikidean kokatzen dute. Hau da, edozeinek ezin du bere lanegun sinple batetik denbora atera dantzara joateko (enplegua, etxeko lanak edota zaintza lanak direla eta); edozeinek ez dauka diru nahikorik dantza ikastaro batera apuntatzeko; edozein ezin da egon taberna batean dantzatzen barran ezer eskatu gabe, kultur etxeetako eskaintza mugatua da…eta garrantzitsuena…plaza jada ez da espazio politiko, komunitario eta dantzatzeko espazioa. Orain, dantza, kontsumorako beste tresna batean bihurtu da. Euren helmuga/emaitza ikuskizun bat sortzea izango da; non euren bizipenak, hausnarketak, aldarrikapenak eta proposmenak plazaratuko dituzten.

## Madrilen, Salserxs tailerra

Salserxs taldea, Madrileko Patio Maravillas zentro sozialean kokatzen da (zen). Salsa dantza taldean genero ikuspegia txertatu eta eraldatu nahian sortu zuten. Modu kolektiboan dantzatu eta eztabaidatzeko gune bat, sarean eskuragarri dituzte hainbat tailer eredu.
Besteak beste printzipio hauen inguruan egiten duten dantza:
Dohakoa izatea
Hizkuntzari garrantzia ematea: "Neskaren" eta "mutilaren rola" erabili ordez, "gidaria" eta "gidatua" hitzak erabiliz. Edo, dantzarako pausu batzuren izenak aldatuz "rómpele el brazo" edo "tírala del pelo" bazalako hitzak, adibidez. Berdinen arteko dantza, edozeinek atera al du edonor dantzara, edonork kanta dezake "rueda" .
Enpatizatu! Jar zaitez bestearen lekuan!
Hemen ikasteko gaude, ez da ezer gertatzen kale egiten baduzu.
Jarrera onarekin babestu giro on hau, printzipio hauek egunero defendatu!
Guztioak gara ongi-etorriak, gatozen lekutik gatozela, larrutan egiten duguna duguna dela. Garrantzitsuena elkar errespetatzea eta ongi pasatzea da.
Dantza egin al badugu, hori da gure iraultza. Gozatu!

Eta zehazki, reggaetoia dantzatzearen kontuarekin, susmoa dut, reggaetoiaren bueltan sortu dena ez dela bakarrik "letra matxisten" kontuagatik sortu. Dantza sueltoaren aldekoen errautsak berpiztu direnaren susmoa daukat…

Gaurkoz hori, hurrengoan gehiago eta hobeto!

# gurutzegRAMA

## Ezkerretik eskuinera

1. Nonahi daude, telebistan, kalean, sarean, uneoro dauzkagu inguruan gu presionatuz, eta askotan irainduz. Spotify entzuten gaudela abesti tarteko isiltasunak suntsitzen dizkiguten bala subliminalak.
Gurutzegramaren goitik beherako 2. puntuan aipatzen da.
2. Nafarroako udalerria. Bertako kobak eta sorginak oso ezagunak dira.
3. Olivia Wilde aktoresak Vynil telesailean duen izena.
4. Idazle elgoibartarra, idazkera gordinekoa. Erraiak liburua argitaratu zuen 2014an. Euskal Harriaren ABDak proektuan hainbat letratan agertzen da.
5. Azkoitiako abeslari eta poetaren abizena. Ipintzan irakasle izandakoa. Kontzertutan aurkezteko "gu xxxxxx gea" dioena. Kafea eta Galletak saiorako Nick Cave & Bad Seeds taldearen diskoa aukeratu zuena.
6. Rosa izeneko XIX. Mendeko marxistaren abizena.
7. Bergarako Gazte Asanbladaren eta beste hainbat kolektiboren bilgunea. Errepresio gune izatetik askatasun gune bilakatuta: xxxxxxxx zaharra.
8. Bergaran jaia non, hauxe han. BergarakUak ez direnentzat pista: azkar hitzaren sinonimoa + txirrinaren hotsaren onomatopeia alderantziz.

## Goitik behera

1. "boligrafo" hitza erabili beharrean hau erabiltzea egokiagoa omen da. Euskaltzaindia dixit.
2. Aldizkaritako eta telebistako hainbat iragarkik hauek desagerrarazteko behar irrazionala sortarazten dizkigute. Pneumatikoen marka ezaguna.
3. Euskal idazle eta kazetaria. Behatz baten zatia falta zaio. Berandu baino lehen telebista programako elkarrizketatuetako bat. Miopiaren defentsore sutsua.
4. Lisabö taldean baterijole ibilitakoa. Egun Jupiter Jon musika taldeko perkusionista.
5. Sexu harremanak izan ostean emeak arrari burua mozten dio. Erlijiodun intsektua.
6. Labegaraietara bidean dagoen tunelean Martxanterek egindako pintadak "argi xxxxxx indartu eitten zaittu" dio.
7. Azala babesteko gorputzaren mekanismoa. Udaran gehienbat hauek kentzeko produktuen iragarkiekin bonbardatzen gaituzte. Gehienetan tirakada bortitzarekin edota laserrarekin desagerrarazten dira.
8. Iparraldean mahats zuku fermentatua.

# Ay de mi Llorona, Llorona...

Zenbat aldiz entzun eta abestuko genuen esaldi hori... Baina nori buruz dihardu Llorona aipatzen duen bakoitzean, nor ote negartia?

Amerika Hegoaldean du jatorria abestiak, Mexiko ekialdeko Tehuantepec-eko istmoan jatorria duen istmoko son estilokoa da, ezagunagoa den vals-aren antzeko erritmoa daukana. Egilea ezezaguna den arren, bertso-lerro ezberdinak aurkituz joan dira, eta abeslari bakoitzak batzuk edo besteak abesten dituzte. 1910. Urtean hasi eta hamar urte iraun zituen Mexikoko iraultzan jasandako min eta doluen adierazgarri da askorentzat, baina bada aintzinakoagoa den leienda bat ere... Herrialde bat baino gehiagotan ahoz-ahokoari eskerrak bizirik iraun duen kondairak dioenez, mamu bat da Llorona. Erreka eta lakuetan bizi den emakume baten arima nahigabe bat, berak hil dituen seme-alaben bila alferrik dabilena. Negar izugarriak egiten ditu, eta entzun edo ikusten dutenak beldurtzen ditu horrela. Amerika Hegoalde guztian zabalduta egon arren, kondairak indar handien duen herrialdea Mexiko da, eta hemen ere honen bi bertsio daude.

Lehenak Espainiarrak heldu zirenekoa kontatzen du. Mexikoko emakume indijena batek gizon Espainiar batekin izandako amodio istorioak emandako hiru seme-alabak berak bakarrik zaintzeaz nekatuta, gizonezkoari bien arteko harremana legezko egin eta haurren kargua hark ere hartzeko eskatzean gizonak sahiestu eta dirudun emakume espainiar batekin ezkondu zelako, mexikarrak hiru haurrak errekan ito zituela kontatzen du istorioak; eta egindakoaz damutzean bere buruaz beste egin zuela amak. Ordutik, gauetan zuriz jantzitako emakume baten mamua ageri dela erreka ertzean, negarrez, bere umeen bila.

Bigarren bertsioa ezezagunagoa da gaur egun, baina Llorona-ren kondaira guztietan zaharrena dela diote. Texcoco aintziraren inguruko biztanleek gauetan beti alderrai dabilen emakume baten negarrak entzuten dituztela, erditzean hil zen lehen emakumearenak hain zuzen ere. Inguruetan bere eta berarekin batera hil zen semearen buruhe-

zurrak airean egoten direla, eta hauek ikusten dituena harrapatua izaten dela zorigaitzen bat edota heriotza eraginez. Azteken kondaira da hau, eta náhuatl hizkuntzan Chocacíhuatl deitzen diote —choca, negar eta cíhuatl, emakume-tik datorrelako.

Bila hasiz gero gauza asko aurki daitezke, eta askorako eman dezake abesti batek; eta letrei erreparatuta aipatu bertsioetako edozeini har dakiokegu zentzua, beraz, ezin dugu jakin benetakoa zein den. Bai ordea kondairako protagonista, mamua eta inork kasurik egiten ez dion desesperazioz haurren bila negarrez ari dena emakumea dela, Llorona.

Ay de mi Llorona, Llorona... Zenbat aldiz eta zenbat abeslariren ahotsetan entzungo ote genuen...? Horietako batek, baina, pasioz abesten zion "Llorona"-ri, eta ziurrenik bera izan zen abestia munduan ezagutarazi zuena. Chavela Vargas abeslaria zen hura, baina ez zen abeslari bat soilik izan... .



# Konplize ditut eta,

## Maite ditut denak

SIRENAK

Beltzenak

Indigenak

Irtenak

Belaunaldiz belaunaldi
identitate ilara
zenbait plaza ta herritan
sarri ohi zaigu islada
bertsolari emeentzat
makina bat traba bada
Drag-king a izan zintezke
edota panpina zara
benetako bertsolari
ala emakume duda da
epaitzen gaituzten hoiei
nahi nieke garbi laga
oholtza goian zein behean
nahi duguna, gu geu gara!
konplize ditut eta
maite ditut denak!



Gorenak

Marimutilenak

Onenak

Dutenak

Zinenak



Izena: Maori Sakai
Herrialdea: Japonia
Berezitasuna: Eguneroko bizitzako estanpak irudikatzen ditu trazu finak eta irregularrak erabiliz. Kolore apalak ditu gogoko. Askotan bere lana GIF formatuan aurkezten du berak sortutako marrazkiei bizia emanez . Fondo txuridun marrazkitan behin eta berriz agertzen dira loreak, kafea, liburuak eta biniloak.
Gehiago jakin nahi izanez gero: www.maorisakai.com

# Esan didate...

Esan didate hau ez janzteko, ezin dela erabili. Esan didate bestea ez eranzteko, erdi-biluzik noala ematen duela. Esan didate "tapatzeko hobeto", probokatzen nabilela dirudiela eta. Esan didate txukuntzeko, axolagabe bat ematen dudala. Esan didate "oso ona zara, baina lan bera egiten duen zure lankideak baino gutxiago kobratzen duzu"; bueno, ez, hori ez didate esan, baina nominak ikusi ditut. Esan didate "haur bat izateko asmoa daukazu? Bada, ez zaitugu kontratatuko"; ez, hau ere ez didate esan, baina adina eta bikotekidea nuen galdetzean inplizituki esan didate. Esan didate ea ez dudan bazkaria prestatu. Esan didate harrikoa egiten lagunduko didatela. Esan didate ea nor den lehen berarekin hizketan egon naizen hura. Esan didate "NIRE polita". Esan didate a ze laguntza daukadan etxean, kejatu ezin naizela. Esan didate jatetxeko afaria ordainduko didatela, hala egiten dela gizalegez. Esan didate ondo esertzeko, nire esertzeko modua batere fina ez dela eta. Esan didate hau ez egiteko, astakirtenen kontua dela. Esan didate haserre egon arren irrifarre egiteko, itxura ona eman dezadan. Esan didate ez ateratzeko gauez bakarrik, arriskutsua dela. Esan didate afaria goxoa ez zegoela eta ikasi beharra dudala. Esan didate ea noizko haurrak. Esan didate gorroto nautela, eta jarraian maite nautela. Esan didate ni gabe ezin direla bizi. Esan didate "hau ez da horrela geratuko". Esan didate lodia naizela. Esan didate inoiz lortuko ez dudala.

Hainbeste gauza esan dizkidate etxeko, inguruko eta urrutikoek...

Geure hizkuntzaren baliabideek eskaintzen duten genero ezaz despistatu nahi izan zaitut, baina bete-betean asmatu duzu. Nola dakizu, bada, emakumea naizela?

Espazio publikoa emakumeona ez dela hainbatetan sentitu dugu, baina Argentinan gertatu da azkenaurrena. Duela aste batzuk, kalean eserita haurrari titia ematen zebilen emakume bati atxilotzearekin meatxatu zioten. Old school. Eta hondartzan eguzkia hartzen titi-bistan zeuden lau emakume atxilotzera bidali zituzten 20 polizia eta 6 patrullero. Honen inguruko komentarioen TOPlean aurkitzen da Federico Andahazi idazleak irratian botatakoa: "Si voy a ver cuerpos desnudos almenos que sean lindos" gorputz itsusiak existituko balira bezala! Jazarpenari aurre egiteko asmoz, kontzentrazioa egin zuten emakumeek plaza batean haurrei titia emanez, eta manifestazioak deitu dituzte EL TETAZO-ren lemapean bigarren gertakizunaren harira. Emakumeok gure gorputzaren jabe gara eta ez digu inork esan behar nola, noiz, zergatik edo zertarako erakutsi edo estali behar dugun gure gorputza. Ebidentzian geratu da gizartearen moral bikoitza: erakutsi baina nik kontsumitu dezadan, bitartean kalera irten baina ez atera konbentzionaletik, heteropatriarkatuak jartzen dizkizun mugetatik. "Vos no podés hacer lo que se te canta!" noski, emakumea zara, eta nahi duzuna egitea ez da merke ateratzen, epaitzen zaituzten begiradak, gorrotoz zuzendutako hitzak, oihu eta keinu bortitzak, soinu nazkagarriak, bultzadak, kolpe gogorrak, kateak, bortxaketak, erailketak.


TOPA DEZAGUN TETAZOA!
HORI DUN, NESKA! SUA!

# egileen deskribapenak

B612 asteroidian: BergarakUa. Emozioen malabarista. Kafea hutsa eta azukre gabe. Kaka egin ostean komunzulora begiratzen duena. Comic Sans eta piñadun pizza gorroto ditu. Kurkuma eta jengibrea ditu jainkotzat. Linux erabiltzailea. Hazkazal kamutsen gatibutasun egoerara ohituta.

Korrosiba: aurkondit et exsarzentovamente paroptika, marinera, askotan histerika eta batzuetan petarda naiz. Amiga de mis amigxs (de quién si no!?). Very hore, baina very very... . Grfgreafesrrds, jigona, erretzailea, nerd, grosera, zikina, akuoldinga, aza lorea, sexualmente aktiba, Puta esan dut? -Baaai "in english"...-, andalussssa, nire laguna Martak ahatea naizela esaten dit, cantaora (que va... mis ganas!), beti korrosiba baina batzuetan korroida be bai. Ez dakit ze gehixau...
azkenean beste txalada bat naiz.

Ainho Nahinonahi: Talaixan normalian. Flamenkia eta ipurlokia, batzutan. Arkera samar bestetan. Leka-okerren Fan-a. Kantu (h)onen biktima. Bertakoa naiz ni. Petrolioa etorkina da. Sekretu guztiak gordetzen, hurrengo elurtearte, urtarrila hontan. Azkenengo tragoa, eta orain, hire maitale traketsa naun, negu bezperetan etcetera etcetera. Emakume basatiek, Bluesik al dute? Eta zer dakigu atzeko patioaz? Galdetu Antigonari edo alboko zeldakoari. Auskalo!

Paooola: Mugitzen dut gorputza, astindu inguruko hautsa, triki doinuei bultza, maite dut iraultza, mundutar/mundukoen ezagutza, bertsoetan rimatzea artisautza, euskal herritar giputza, garagardotan hainbatetan dutxa... bi hitzetan esateko: Folklorika hutsa!

Lilit:

e
er
err
erre
errem
erreme
erremed
erremedi
erremedio
erremedior
erremediori
erremediorik
erremediorik e
erremediorik ez

jonejones: Patata tortilla, letxuga eta kipula gorrixa! Ez dakit marrazten, baina azkenaldixan eskuak irudikatzen ahalegintzen naiz. Urholik...Musikoholik...Landaraholik... Batzutan argazki beste batzutan lari lare edo larero ! Gauza asko kontatzeko...One sec.fotoxopeko plumia hartzera noia eta zuei zeoze ekartzera...

Onna: Ez diot inori errurik bota, izan nahi nuen harro nitaz, onartzeko askatasun desiratuak ez gaituela askatuko. Eta ez gaitzala harrapa, berriz egun argiak ez bada paisaia gazteen besoetan aurkitzen garela guztiak. Hondamendi hontan bizi egin nahi dut amets berriei helduz. Dena ikusi nahi dut, dena idatzi eta dastatu, astindu amets gaiztoak aske sentitzen banaiz. Badakit, harremanen laberintoan galduta gabiltz baina dena dekoratu bat dela onartuta, botoirik sakatu ez tarte luze batez eta ekarri marrubiak ezpainetara!

# nor da nor?



turtukiña, turtukiñie. izena. Alua. "*Andrie andrie danak belaunek junto eta turtukiñie tapauta*".